# Garizumako IV. astea

## Aukerako Meza

Irakurgai honeek aste honetako edozein egunetan erabili daitekez, batez ere **B** eta **C** urteetan, hau da, jaiotzaz itsu zanaren ebanjelioa Garizumako IV. domekan irakurri ez danean.

## I. Irakurgaia

*Jagiko naz;*
*ilunpean egonik be, Jauna dot argi.*

Mikeasen Profezia liburutik

*Mi* 7, 7-9

Nik Jaunagan ditut begiak,
Jainko nire Salbatzaileagan konfiantza;
entzungo deust, bai, Jainkoak.

Ez dadila poztu arerioa nire zoritxarraz:
jausi banaz be, jagiko naz;
ilunpean egonik be, Jauna dot argi.

Jaunaren hasarrea jasango dot,
haren aurka egin dot-eta pekatu,
nire auzia erabagi
eta nire alde urten dagian arte;
bere argira eroango nau
eta ikusiko dot haren salbazinoa.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 1. 7-8b. 8c-9c. 13-14 (R/. 1a)

R/. **Jauna dot argi eta salbamen**.

V/. Jauna dot argi eta salbazino,
nork ni bildurtu?
Jauna biziaren babes,
nork ni ikaratu? R/.

V/. Entzun, Jauna, nire dei-hotsa,
erruki zakidaz eta erantzun.
Bihotzak esaten deust:
«Bilatu egizu haren aurpegia». R/.

V/. Zure aurpegi bila nabil, Jauna,
ez ezkutatu niri zeure aurpegia.
Ez baztertu zeure zerbitzari hau hasarre,
Zeu zaitut-eta laguntza. R/.

V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 8, 12

V/. Neu naz munduaren argia, dino Jaunak;
Niri jarraitzen deustanak izango dau bizirako argia.

**EBANJELIOA**

*Joan zan itsua, garbitu*
*eta ikusten ebala bihurtu zan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 9, 1-41

Aldi haretan, Jesusek, bidez joiala, jaiotzatik itsua zan gizon bat ikusi eban. Eta ikasleek itaundu eutsoen: «Maisu, nork egin eban pekatu, hau itsu jaiotzeko, honek ala beronen gurasoek?»

Jesusek erantzun eutsen: «Ez honek, ez beronen gurasoek, ez eben pekaturik egin, ezpada ze, Jainkoaren egintzak honengan agertu daitezan jaio zan itsu. Egun-argia dan bitartean egin behar dodaz bialdu nauanaren egintzak; badator gaua, eta orduan inork ezin leike lanik egin. Munduan nagoan bitartean, munduaren argia naz».

Hau esanik, txua bota eban lurrera,

txuaz lohia egin eta lohiaz begiak igurtzi eutsozan itsuari; gero, esan eutson: «Zoaz eta garbitu zaitez Siloeko uraskan». (Siloek «Bialdua» esan gura dau). Joan zan, bada, itsua, garbitu eta ikusten ebala bihurtu zan.

Auzokoek eta lehen eskean ikusten ebenek esaten eben: «Ez da, ba, hauxe jesarrita-eta eskean egoten zana?» Batzuek inoen: «Bai, bera da». Beste batzuek: «Ez, ez da bera, haren antzeko bat baino». Berak, barriz, inoan: «Bai, haxe naz». Orduan itaundu eutsoen: «Zelan edegi jatzuz, bada, begiak?» Eta harek erantzun: «Jesus dalakoak lohia egin dau, begiak igurtzi deustaz eta agindu deust: “Zoaz Siloera eta garbitu”; joan, garbitu eta ikusten hasi naz». Itaundu eutsoen: «Non da gizon hori?» Harek erantzun: «Ez dakit».

Zapatua zan Jesusek lohia egin eta begiak edegi eutsozan eguna. Horregaitik, fariseuakana eroan eben itsu izandakoa, eta fariseuek barriro itaundu eutsoen zelan hasi zan ikusten. Harek erantzun eutsen: «Lohia jarri eustan begietan, garbitu nintzan eta ikusi egiten dot».

Fariseuetako batzuek inoen: «Gizon hori ez dator Jainkoagandik, ze, ez dau zapatuko atseden eguna errespetatzen». Beste batzuek, barriz, inoen: «Zelan egin leike pekatari batek holako mirarizko seinalerik?» Eta ez etozen bat euren eretxietan. Barriro itaundu eutsoen itsuari: «Eta zuk zer dinozu begiak edegi deutsuzanaz?» Harek erantzun: «Profeta dala».

Halan be, judeguek ez eben sinistu gura gizon ha itsua izan eta ikusten hasi zanik. Beraz, haren gurasoei deitu eta itaundu eutsien: «Hau da zuen semea, itsu jaio zala dinozuena? Zelan ikusten dau, bada, orain?» Gurasoek erantzun eutsien: «Guk badakigu geure semea dana eta itsu jaio zana; baina orain zelan ikusten dauan edo begiak nork zabaldu deutsozan, hori ez dakigu. Itaundu berari, ze, badauka adina bere buruaren barri emoteko-eta». Judeguen bildurrez berba egiten eben gurasoek holan, ze, ordurako agintariek erabagita euken Jesus Mesias zala autortzen ebana sinagogatik botatzea. Horregaitik esan eben gurasoek: «Badauka adina, itaundu berari».

Judeguek bigarren biderrez deitu eutsoen itsu izanari eta esan eutsoen: «Autortu egia Jainkoaren aurrean. Guk badakigu gizon hori pekataria dana». Harek erantzun eutsen: «Pekatari dan ala ez, nik ez dakit. Dakidan gauza bakarra hauxe da: itsua nintzala eta orain ikusi egiten dodala».

Hareek barriro: «Zer egin deutsu? Zelan zabaldu deutsuz begiak?» Harek erantzun eutsen: «Esan deutsuet lehen be, eta ez deustazue jaramonik egin. Zergaitik entzun gura dozue barriro? Zuek be haren ikasle izan nahi dozue ala?»

Hareek irainez bete eben eta esan eutsoen: «Zeu izango zara haren ikasle; gu Moisesen ikasle gara. Guk ziur dakigu Jainkoak Moisesi berba egin eutsona, baina hori nongoa dan be ez dakigu».

Harek orduan: «Hori bai harrigarria! Zuek nongoa dan be jakin ez, eta harek niri begiak edegi. Jakina da Jainkoak ez deutsela pekatariei entzuten, ezpada ze, jainkozale danari eta beraren nahia egiten dauanari entzuten deutsola. Egundo ez da entzun itsu jaiotako bati

inork begiak zabaldu deutsozanik. Gizon horrek, Jainkoagandik ez baletor, ezingo leuke ezer egin». Hareek erantzun eutsoen: «Goitik beheraino pekatari jaio zinan, eta zu guri irakatsi nahian?» Eta kanpora bota eben.

Jakin eban Jesusek bota egin ebela eta, aurkitu ebanean, itaundu eutson: «Sinisten dozu Gizonaren Semeagan?» Harek erantzun: «Esaidazu nor dan, Jauna, sinistu dagidan». Jesusek esan eutson: «Ikusi dozu; zeugaz berbetan dihardduan berbera da». Harek orduan: «Sinisten dot, Jauna». Eta aurrean ahuspeztu jakon.

Ondoren Jesusek esan eban: «Epai baterako etorri naz Ni mundu honetara; ikusten ez dabenek ikusi dagien, eta ikusten dabenak itsu bihurtu daitezan». Jesusegaz egozan fariseu batzuek, hori entzunda, esan eutsoen: «Geu be itsu ete gara, bada?» Jesusek erantzun eutsen: «Itsu bazinie, ez zeunkie eukiko pekaturik. Baina ikusten dozuela dinozuenez, zeuon pekatuan irauten dozue».

Jaunak esana.

# Garizumako IV. astelehena

## I. IRAKURGAIA

*Ez da han gehiago entzungo*
*negar-hotsik, ez garrasirik.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 65, 17-21

Hauxe dino Jaunak:

«Hara, zeru barriak eta lur barria egingo ditut;
lehengoen gogorapenik ez da geldituko,
eta ez dira barriro gogora etorriko.

Bestetara, amaibako poza eta alaitasuna izango dabe
Nik egingo dodanagaitik,
poz-uri egingo dot-eta Jerusalem,
alaitasun-herri bertako jentea.
Pozaren pozez izango naz Jerusalemengaitik,
alai neure herriagaitik.
Ez da han gehiago entzungo negar-hotsik, ez garrasirik.

Ez da han izango jaio eta laster hilko danik,
ezta bere adin betera helduko ez danik

be,
ehun urtetan hiltzea gazterik hiltzea izango da-eta,
eta ehun urtera heltzen ez dana madarikatutzat emongo.
Etxeak egin eta hareetan biziko dira,
mahastiak landatu eta hareen frutua jango dabe».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 30 [29], 2 eta 4. 5-6. 11-12a eta 13b (R/. 2a)

R/. **Goratuko zaitut, Jauna, onik atara nozulako.**

V/. Goratzen zaitut, Jauna, onik atara nozulako,
arerioei nire lepotik pozten itzi ez deutsezulako.
Jauna, Herio-lezatik atara nozu,
zulora jaistear nengoala bizibarritu. R/.

V/. Kanta Jaunari, haren fededunok,
goratu egizue, haren santutasuna gogoratuz.
Une baterako da haren hasarrea,
bizi guztirako haren onginahia.

Arratsean negarra da gurean,
poz-oihua goizean. R/.

V/. Entzun, Jauna, eta erruki nitaz,
izan zakidaz laguntzaile, Jauna».
Negarra dantza bihurtu deustazu.
Jauna, ene Jainkoa, eskerrak emongo deutsudaz beti. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Am* 5, 14

V/. Bilatu egizue ona eta ez txarra,
bizi zaitezen,
eta zuekin izango da Jauna.

## **EBANJELIOA**

*Zoaz etxera, onik dozu semea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 4, 43-54

Aldi haretan, Jesus Samariatik urten eta Galileara joan zan. Jesusek berak autortu izan eban, profeta ez dabela bere herrian aintzat hartzen. Halan be, Galileara heldu zanean, galilearrek harrera ona egin eutsoen. Izan be, Jerusalemen izanak ziran eurak be eta

ikusi izan ebezan Jesusek Pazko-jaietan egin zituan guztiak.

Jesus Galileako Kanara joan zan barriro, ura ardao bihurtu eban herrira. Bazan han errege-funtzionario bat, semea Kafarnaumen gaixorik eukana. Funtzionarioak, Jesus Judeatik Galileara etorri zala jakitean, beragana joan eta bere semea osatzera jaisteko eskatu eutson, hil aginean egoala-eta. Jesusek erantzun eutson: «Ezaugarriak eta egintza harrigarriak ikusten ez badozuez, ez dozue sinisten». Baina errege-funtzionarioak barriro: «Zatoz, Jauna, nire umea hil baino lehen». Jesusek esan eutson: «Zoaz etxera, semea ondo daukazu-eta». Gizonak sinistu egin eban Jesusek esana eta joan egin zan.

Etxerantz joiala, morroiek urten eutsoen bidera, semea ondo egoala esanez. Orduan itaundu eutsen zer ordutan hasi zan onera etortzen. Eta hareek erantzun: «Atzo eguerdiko ordu batetan itzi eutson sukarrak». Konturatu zan aita ordu harexetan esan eutsola Jesusek: «Ondo daukazu semea». Eta sinistu egin eben

Jesusengan berak eta etxeko guztiek.
Judeatik Galileara bihurtu zanean egin eban Jesusek bigarren ezaugarri hau.

Jaunak esana.

## Garizumako IV. martitzena

### I. IRAKURGAIA

*Ura ikusi neban tenplutik urteten;*
*eta ur hori heldu jaken guztiak salbatu egin ziran.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 47, 1-9. 12

Egun hareetan, Jaunaren tenpluko sarrerara eroan ninduan gizonak. Ura ikusi neban tenpluko ate azpitik urteten eta sortaldera joaten, tenplua sortaldera begira egoan-eta. Ura tenpluaren eskumaldetik jaisten zan, altarearen hegoaldera. Gero, iparraldeko atetik urtenazo eustan, eta kanpotik joan-etorria eginazo eustan, sortaldera begira egoan sarreraraino. Eskumaldetik joian ura isurian.
Gizonak sortalderantz urten eban eta eskuan eukan kordelaz bostehun metro neurtu eban, eta uretik eroan ninduan;

orkatilaraino heltzen jatan. Beste bostehun metro neurtu, eta uretik eroan ninduan; belauneraino heltzen jatan. Beste bostehun metro neurtu, eta uretik eroan ninduan; garriraino heltzen jatan. Beste bostehun metro neurtu eban; igaro ezinezko ibaia zan, hain ziran-eta handiak urak; ibai ha ezin neban igerian baino zeharkatu. Gizonak esan eustan: «Gizaseme, ikusi dozu?» Eta, bihurtzean, ibaiaren bazterretik eroan ninduan.

Bihurtzean, ibaiaren alde bietan zuhaitz asko egoala ohartu nintzan. Gizonak esan eustan: «Ur hau sortaldera doa, Araba haranera jaisten da eta Itsaso Hilean amaitzen. Itsasoratzean, hango ur ustelak ondu egingo ditu. Ibaia helduko dan edonon, mota guztietako piztiak biziko dira eta arrain asko izango da; itsasoko urak on bihurtuko dira, eta bizia sortuko dau doan toki guztietan.

Ibaiaren ertz bietan, mota guztietako fruta-arbolak haziko dira; ez jake orririk jausiko, eta eten barik emongo dabe frutua, hilero emonaldi bat, santutegitik sortzen dan urak ureztatzen ditu-eta.

Frutuak janari izango dira, eta orriak osagai».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 46 [45], 2-3. 5-6. 8-9 (R/. 8)

R/. **Jaun ahalguztiduna geugaz dogu,**
**Jakoben Jainkoa gure gotorleku.**

V/. Jainkoa dogu babesleku eta indar,
edozein larrialditan laguntza azkar.
Horregaitik ez gara bildur,
nahiz eta lurrak dardara egin
edota mendiak itsas hondora amildu. R/.

V/. Ibai baten adarrek alaitzen dabe Jainkoaren uria,
Goi-goikoaren bizileku guztiz santua.
Jainkoa dau erdian, ez dabil kili-kolo,
goiz-goizetik laguntzen deutso Jainkoak. R/.

V/. Jaun ahalguztiduna geugaz dogu,
Jakoben Jainkoa gure gotorleku!
Zatoze eta ikusi Jaunaren egintzak,
lurrean eragin dituan aldaketak. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Sal* 51 [50], 12a. 14a

V/. Ene Jainko, sortu bihotz garbia nigan,
poztu nagizu barriro zeure salbazinoaz.

## **EBANJELIOA**

*Une berean osaturik gelditu zan gizona.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 5, 1-3a. 5-16

Aldi haretan, judeguen jai bat ospatzen zan, eta Jesusek Jerusalemera igon eban. Bada Jerusalemen, Ardien Atea deitutakoaren ondoan, hebreeraz Betzata deritxon uraska bat, bost aterpe dituana. Aterpeetan gaixo asko egoten zan, lurrean etxunda: itsu. herren eta elbarri.

Bazan bertan hogeita hamazortzi urtez gaixorik egoan gizon bat. Jesusek, han etxunda ikusi eta egoera haretan aspalditik egoala jakinik, esan eutson: «Gura ete dozu osatu?» Gaixoak erantzun eutson: «Jauna, ez daukat inor ura mogitzean uraskara sartuko nauanik; ni heldu orduko, besteren

batek aurrea hartzen deust». Jesusek esan eutson: «Jagi, hartu esku-ohea eta ibili». Une berean osatuta gertatu zan gizona, esku-ohea hartu eta ibiltzen hasi zan.

Zapatua zan ha eguna, atseden-eguna. Horregaitik, judeguek esan eutsoen osatuari: «Zapatua da, eta ez jatzu bidezko esku-ohea eroatea». Harek erantzun eutsen: «Osatu nauanak berak esan deust: “Hartu esku-ohea eta ibili”». Orduan, itaundu eutsoen: «Nor da esku-ohea hartu eta ibiltzeko esan deutsuna?» Osatuak, ostera, ez ekian nor zan, ze, Jesus ezkutatu egin zan inguruko jentearen artean.

Gero, Jesusek tenpluan aurkitu eban eta esan eutson: «Begira, osatuta zagoz. Ez egin pekaturik barriro, okerragorik gertatu ez dakizun». Joan zan gizon ha, eta judeguei jakinazo eutsen Jesus zala osatu ebana. Horregaitik, hatan be, erasotzen eutsoen judeguek Jesusi: zapatuz halako gauzak egiten zitualako.

Jaunak esana.

# Garizumako IV. eguaztena

## I. Irakurgaia

*Herriaren itun izateko izentatu zaitut,*
*lurraldea berreraiki dagizun.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 49, 8-15

Hauxe dino Jaunak:
«Borondate-sasoian erantzun deutsut, salbazino-egunean lagundu.
Babestu zaitut eta herriaren itun izateko izentatu,
herrialdea berreraiki dagizun,
lurralde hondatua ondaretzat banatu dagizun;
preso dagozanei esateko: "Urten kanpora",
eta ilunpean dagozanei: "Etorri argira".

Bideetan be larratuko dira,
muino gorri guztietan janarituko.
Ez dira gose, ez egarri izango;
sargoriak eta eguzkiak ez ditu joko,
erruki dituanak ditu-eta gidatuko
eta iturburuetara eroango.
Bide bihurtuko ditut mendiak eta galtzadak zelaituko.

Hara non datozan urrunetik;
ipar eta mendebal aldetik datoz, Egipto aldetik be bai.
Egin poz-oihu, zeruok! Alaitu zaitez, lurra!
Egin poz-irrintzi, mendiok!
Jaunak bere herria kontsolatu dau
eta bere pobreentzat errukia izan dau.

Sionek esaten eban:
"Baztertua nauka Jaunak, ahaztuta nire Jaubeak".
Ahaztu ete daiteke ama bere umetxuaz
edota ukatu ete leikio bere sabeleko umeari errukia?
Ba, ama umeaz ahaztuko balitz be,
Ni ez naz zutaz ahaztuko!»

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 8-9. 13c-14. 17-18 (R/. 8a)

R/. **Errukiorra eta bihozbera da Jauna.**

V/. Errukiorra eta bihozbera da Jauna,
hasarregatxa eta errukiz betea.
Ona da Jauna guztientzat,

errukiz betea bere sorkari guztientzat. R/.

V/. Fidagarria da Jauna bere hitz guztietan,
leiala bere egintza guztietan.
Jaunak eusten deutse jaustear dagozanei,
eta jasotzen ditu lur joak. R/.

V/. Zintzoa da Jauna bere bide guztietan,
leiala egintza guztietan.
Hurrean dago Jauna dei egiten deutsoenengandik,
benetan dei egiten deutsoen guztiengandik. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Jn* 11, 25a. 26

V/. Neu naz biztuera eta bizia, dino Jaunak;
Nigan sinisten dauana ez da betiko hilko.

## EBANJELIOA

*Aitak hilak biztu eta bizia emoten deutsen lez,*
*Semeak be bizia emoten deutse nahi dituanei.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 5, 17-30

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen judeguei: «Nire Aitak lanean dihardu beti, eta Neuk be beharrean dihardut.

Esandako honexegaitik, judeguek oraindino be gehiago bilatzen eben Jesus hiltzea; ze, zapatuko atsedena ez errespetatzeaz gainera, Jainkoa bere Aita ebala inoan, bere burua Jainkoaren pareko eginez.

Jesusek esan eutsen: «Bene-benetan dinotsuet: Semeak ezin leike ezer be egin berak beratara, Aita egiten ikusten dauana besterik: Aitak zer egin, haxe bera egiten dau Semeak be. Izan be, Aitak maite dau Semea eta berak egiten dituan guztiak erakusten deutsoz, eta honeek baino egintza handiagoak be erakutsiko deutsoz, harritu egingo zaitueen egintzak. Aitak, hilak biztu eta bizia emoten deutsen lez, Semeak be bizia emoten deutse nahi dauanei.

Aitak ez dau inor epaitzen, ezpada ze, epaitzeko ahalmen guztia Semearen esku itzi dau, guztiek, Aita ohoratzen daben bezala, Semea be goratu dagien; Semea ohoratzen ez dauanak, ha bialdu dauan Aita be ez dau ohoratzen. Bene-

benetan dinotsuet: Nire berbea entzun eta bialdu nauanagan sinisten dauanak, betiko bizitza dauka; ez da kondenatua izango, ze, heriotzatik bizitzara igaroa da daborduko.

Bene-benetan dinotsuet: Badator ordua, hobeto esan, helduta dago, hildakoek Jainkoaren Semearen ahotsa entzungo dabena, eta entzuten dabenak biziko dira. Aitak bizitza beragan daukan bezala, Semeari be bizitza beragan izatea emon deutso. Gainera, epaitzeko ahalmena emon deutso, Gizonaren Semea dalako. Ez harritu dinotsuedanaz; ze, badator ordua, hildako guztiek beraren ahotsa entzungo dabena, eta hilobietatik urtengo dabena: ona egin ebenak betiko bizitzarako biztuko dira; txarra egin ebenak, ostera, kondenatuak izateko.

Nik ezin neike neuk neutara ezer egin; Aitari entzuneko eran epaitzen dot, eta nire epaia zuzena da, ze, ez dot helburu neure nahia egitea, bialdu ninduanarena baino».

Jaunak esana.

# Garizumako IV. eguena

## I. IRAKURGAIA

*Egizu atzera, Jauna,*
*zeure herriari egin deutsazun mehatxutik.*

Urteera liburutik

*Ur* 32, 7-14

Egun hareetan, Jaunak esan eutson Moisesi: «Jaitsi zaitez menditik, pekatu egin dau-eta Egiptotik atara zenduan zure herriak. Laster asko okertu dira agindu neutsen bidetik. Zekor-irudia egin dabe, eta haren aurrean ahuspeztu eta opariak eskeini deutsoez, esanez: "Hau da zure jainkoa, Israel, Egiptotik atara zinduzana"».

Jaunak esan eutson gainera: «Ikusten dot herri hau burugogor dala; itzi egizu, bada; nire hasarrea horreen aurka sutu, eta hondatu egingo ditut, eta zugandik herri handi bat sortuazoko dot».

Moisesek, ostera, honan otoitz egin eutson Jaunari, bere Jainkoari: «Jauna, zelan jarriko zara, bada, hasarre-sutan, hain ahalmen handiz eta esku indartsuz Egiptotik atara zenduan zeure herri honen aurka? Hara zer esango leukien

egiptoarrek: "Asmo txarrez atara ebazan Jainkoak, mendietan hilazoteko asmoz, lur azaletik ezabatzeko". Urrundu egizu zeure hasarre-sumina eta egizu atzera zeure herriari egin deutsazun mehatxutik.

Gogoratu egizuz zeure zerbitzariak, Abraham, Isaak eta Israel, eta zeure buruagaitik hareei egin zeuntsen zin hau: "Zuen ondorengoak zeruko izarrak baizen ugari egingo ditut, eta agindu deutsuedan lurralde hau guztia betiko ondaretzat emongo deutset"».

Halan, Jaunak atzera egin eban bere herriari egindako mehatxutik.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 106 [105], 19-20. 21-22. 23 (R/. 4a)

R/. **Gogoratu gutaz, Jauna,
zeure herriaganako onginahiagaitik**.

V/. Zekorra egin eben Horeb mendian,
metal urtuzko irudiaren aurrean ahuspeztu ziran.
Euren ospetzat euken Jainkoaren ordez,

bedarra jaten dauan zekorraren irudia jarri eben. R/.

V/. Ahaztu egin ziran Jainkoaz, euren salbatzaileaz,
Egipton gauza ikusgarriak egin ebazanaz,
Kam-en lurraldean egintza harrigarriak
eta Itsaso Gorrian ikaragarriak egin ebazanaz. R/.

V/. Prest egoan Jainkoa hareek hondatzeko,
Moises bere aukeratuagaitik izan ez balitz;
tartean sartu eta Jainkoaren aurrean jarri zan,
haren hasarre hondatzailea baretzeko. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 3, 16

V/. Hain maite izan eban Jainkoak mundua,
bere Seme bakarra emon eutson;
harengan sinisten dauanak betiko bizia dau.

## EBANJELIOA

*Bada norbait salatuko zaituena:*
*Moises bera, zeuen itxaropen dozuena.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 5, 31-47

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen judegu-agintariei: «Nik neure buruaren alde egingo baneu autormen, nire autormenak ez leuke balioko. Beste batek dau nire alde autormen egiten, eta ondotxu dakit harek nire alde egiten dauan autormenak balio dauana.

Zuek mandatariak bialdu zeuntsoezan Joan Bateatzaileari, eta harek autormen egin eutson egiari. Ez dinot hau inongo gizakiren autormen-beharrik dodalako, zuek salbatu zaitezen baino. Joan Bateatzailea argi-zuzi biztua eta distiratsua zan, zuek, ostera, alditxu batez, poza hartu gura izan dozue haren argian.

Baina Nik badaukat Joanen autormena baino hoberik: Nik betetzeko Aitak emon deustazan egintzak; neure egintzek egiten dabe autormen nire alde eta Aitak bialdu nauala probatzen. Bialdu nauan Aitak berak be egiten dau autormen nire alde. Baina zuek ez dozue inoiz haren

ahotsik entzun, ez haren aurpegirik ikusi, eta haren berbeak be ez dauka zuen barruan lekurik, harek bialduagan ez sinisteak erakusten dauan lez.

Aztertzen dozuez Liburu Santuak, betiko bizitza hareetan aurkituko dozuelakoan, eta horreexek dabe, hatan be, nire alde autormen egiten; halan be, ez dozue Nigana etorri gura, betiko bizitza izateko.

Ez dot gizakiakandik aintzarik onartzen; baina ondo ezagutzen zaituet eta badakit Jainkoa maite ez dozuena. Ni neure Aitaren izenean etorria naz, baina zuek ez nozue onartu; norbait bere izenean etorriko balitz, ha bai, onartuko zeunkie. Zelan sinistu zeinkie zuek, alkarrengandik onartzen badozue aintza, eta Jainko bakarragandik datorren aintzak ez badeutsue ardurarik?

Ez uste izan Aitaren aurrean Nik salatuko zaituedanik; bada salatuko zaituen nonor: Moises bera, zeuen itxaropen dozuena. Izan be, Moisesi sinistuko bazeuntsoe, Neuri be sinistuko zeunskide, ze, Neutaz idatzi eban harek; baina harek idatzia sinisten

ez badozue, zelan sinistuko dozue nik esana?»

Jaunak esana.

## Garizumako IV. barikua

### I. IRAKURGAIA

*Heriotza lotsagarrira kondenatuko dogu.*

Jakituria liburutik

*Jkd* 2, 1a. 12-22

Hauxe inoen gaiztoek, oker arrazoituz:
«Jarri deioguzan sareak zintzoari,
gogaikarri izaten jaku-eta;
gure jokabideari aurka egiten deutso:
legea haustea aurpegiratzen deusku
eta hartutako heziketaren aurkako hutsegiteak salatzen.
Jainkoa ezagutzen dauala dino
eta Jaunaren seme deitzen deutso bere buruari.

Bere izaeraz gure pentsaera salatzen dau;
zintzoa ikuste hutsa be jasanezina jaku.
Besteena ez lakoa da haren biziera,
eta oso bestelakoa haren jokabidea.

Faltsutzat hartzen gaitu
eta kutsagarria balitz lez urruntzen da gure jokabidetik;
azkenean zintzoak zoriontsu izango dirala dino,
eta Jainkoa bere aita dauala-eta harro dabil.

Ikusi dagigun esaten dauana egia dan ala ez,
aztertu dagigun zelako amaiera dauan ikusteko.
Benetan Jainkoaren seme bada,
etorriko jako ha zintzoari laguntzera
eta libratuko dau arerioen eskuetatik.

Irainak eta oinazeak jasanazoko deutsaguz,
haren nasaitasuna ezagutu eta eroapena probatzeko.
Heriotza lotsagarrira kondenatuko dogu,
bere esanetan, Jainkoak alde urtengo deutso-eta».

Holan arrazoitzen dabe gaiztoek,
baina oker dabiltz, euren gaiztakeriak itsutu ditu-eta;

ez dabez ezagutzen Jainkoaren asmo ezkutuak;
ez dabe jainkozaletasunari dagokion saririk itxaroten,
ezta aintzat hartzen be bizitza akats bakoari dagokion ohorea.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 34 [33], 17-18. 19-20. 21 eta 23 (R/. 19a)

R/. **Hurrean dabe Jauna bihotz-hausiek.**

V/. Gaizkileen aurka Jaunaren aurpegia,
lurretik ezabatzeko hareen gogorapena.
Deadar egiten dabe zintzoek, eta Jaunak entzun,
larrialdi guztietatik libratzen ditu. R/.

V/. Hurrean dabe Jauna bihotz-hausiek,
salbatzen ditu barru-jausiak.
Zoritxar asko izaten dau zintzoak,
baina guztietatik libratzen dau Jaunak. R/.

V/. Hazur guztiak zaintzen deutsoz,
bat bakarra be ez deutsoe hausiko.
Jaunak askatzen dau bere zerbitzarien

bizia,
harengan babesten diranek ez dabe zigorrik izango. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Mt* 4, 4b

V/. Gizakia ez da ogiz bakarrik bizi,
Jainkoaren ahotik urteten dauan hitz guztitik baino.

## EBANJELIOA

*Atxilotu egin nahi izan eben,*
*baina ez zan ondino heldu haren ordua.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 7, 1-2. 10. 25-30

Aldi haretan, Jesus Galilean ebilen; ez eban Judean ibili nahi, ze, judeguek hil egin nahi eben.
Hurrean zan Txabola-jaia, judeguen jaietariko bat. Jesusen senideak jaietara joan ondoren, bera be joan egin zan; ez, ostera, agirian, erdi ezkutuan baino.

Orduan, Jerusalemen bizi ziran batzuk itauntzen hasi ziran: «Ez ete da hau hil gura dabena? Ba, agirian dihardu berbetan, eta ez deutsoe ezer esaten.

Benetan onartu ete dabe buruzagiek berau dala Mesias? Mesias etorriko danean, ez dau inork jakingo nongoa dan; hau, ostera, badakigu nongoa dan».

Jesusek, orduan, tenpluan irakasten ebilela, esan eban oihu eginez: «Ni ezagutzen nozue, eta badakizue nongoa nazan; baina ni ez naz neurez etorri, ezpada ze, fidagarria danak bialdu nau, eta zuek ez dozue ha ezagutzen. Nik, bai, ezagutzen dot, harengandik nator-eta, eta berak bialdua naz».

Orduan, atxilotu egin gura izan eben; baina ez eutson inork eskurik ezarri, ze, ez zan oraindino haren ordua.

Jaunak esana.

## Garizumako IV. zapatua

### I. IRAKURGAIA

*Hiltzera daroen bildots otzana lakoa nintzan ni.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 11, 18-20

«Jaunak jakinazo eustan, eta holan konturatu nintzan; harek azaldu eustan arerioen azpilana nire kontra.

Hiltzera daroen bildots otzana lakoa nintzan ni, eta ez neban nire kalterako erabilezan asmoen barri: "Bota dagigun zuhaitza bere mardulean; kendu dagigun bizidunen lurretik, ez dadila haren gogorapenik be gelditu".

Baina Zuk, Jaun ahalguztidun horrek, zuzen epaitzen dozu
eta gizakiaren buru-bihotzak aztertzen dozuz.
Zeure esku itzi dot neure auzia:
ikusiko ahal dot zure bengantza arerioen lepo!»
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 7, 2-3. 9b-10. 11-12 (R/. 2a)

R/. **Zugan babesten naz,**
**Jauna, ene Jainkoa.**

V/. Zugan babesten naz, Jauna, ene Jainkoa;
salbatu ni erasotzaileengandik, libratu nagizu;
bestela, lehoiak lez harrapatu eta txikituko nabe,

eta ezin izango nau inork libratu. R/.

V/. Autortu, Jauna, zuzena nazala eta errubakoa.
Amaitu bedi gaiztoen gaiztakeria,
eta eutsi egiozu zintzoari,
bihotz-barruak aztertzen dozuzan
Jainko zuzen horrek. R/.

V/. Jainkoa dot babeski,
bihotz-zuzenak salbatzen dituan ha.
Epaile zuzena da Jainkoa;
zigor-epaia emoten dau egunero. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Lk* 8, 15

V/. Zorionekoak Jainkoaren hitza
bihotz onez eta zabalez entzunik,
barruan gorde eta iraupenez frutua emoten dabenak.

## **EBANJELIOA**

*Galileatik etorri ete daiteke Mesias?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 7, 40-53

Aldi haretan, jente arteko batzuek, Jesusen hitzak entzutean, zera inoen: «Hauxe da egiaz etortzekoa dan profeta». Beste batzuek esaten eben: «Hauxe da Mesias». Beste batzuek, barriz: «Galileatik etorri ete leiteke Mesias? Ez ete dino Liburu Santuak Mesias Daviden jatorrikoa izango dala eta haren herritik, Betleemdik, etorriko dala?» Eretxi kontrajarriak egozan, bada, jentearen artean Jesusen gainean. Batzuek preso hartu gura eben; baina ez eutson inork eskurik gainean ezarri.

Guardiak abadeburu eta fariseoakana bihurtu ziran, eta honeek itaundu eutsien: «Zergaitik ez dozue ekarri?» Guardiek erantzun eutsien: «Ez dau sekula inork gizon horrek lez berba egin». Fariseuek erantzun eutsien: «Zer? Zeuok be engainatu zaitue ala? Sinistu ete dau harengan agintari edo fariseuetarikoren batek be? Baina legea ezagutzen ez dauan jente hori madarikatuta dago».

Orduan, Nikodemok, fariseu hareetariko batek, behinola Jesusengana joan zanak, esan eutsen: «Bidezkoa ete da gure legearen arabera

inor kondenatzea, berarí entzun eta zer egin dauan jakin barik?» Besteek erantzun eutsoen: «Galilearra zara zeu be ala? Aztertu Liburu Santuak eta ikusiko dozu Galilean ez dala inoiz profetarik sortu». Ondoren, bakotxa bere etxera joan zan.

Jaunak esana.